# Euskara

**Euskara** Euskal Herriko hizkuntza da.[5] Hizkuntza isolatua da, ez baitzaio ahaidetasunik aurkitu, eta morfologiari dagokionez, hizkuntza ergatiboa da. Euskaraz mintzo direnei euskaldun deritze. Gaur egun, Euskal Herrian bertan ere hizkuntza gutxitua da, lurralde horretan gaztelania eta frantsesa nagusitu baitira.

Euskararen sustrairik zaharrenak, Erromatar Inperioaren aurretikoak, Akitania osoan eta Bizkaiko golkotik Andorraraino bitarteko Pirinioen bi aldeetan agertu dira. Erdi Aroan, gutxienez Errioxan eta Burgosko ipar-ekialdean ere hitz egin zela dokumentatuta dago. Gutxitze prozesu latza jasan du, eta lurraldeak galdu ditu etenik gabe. Nafarroa Garaian, bereziki, prozesu hori oso nabarmena izan da azken mendeetan. XIX. mendearen bukaeran eta XX. mendearen hasieran, hainbat intelektual nahiz Arturo Kanpion eta Sabino Arana bezalako politikarien eraginez nolabait biziberritu zen, eusko abertzaletasunari estuki lotu baitzen. Frankismoaren garaian (1936–1977) euskarak jazarpen arrotza pairatu zuen eta ia desagertu zen, baina berriro ere indartu egin da 1960ko hamarkadaz geroztik, euskararen aldeko herri mugimenduak (ikastolak, AEK...) eta idatzizko estandarizazioak lagunduta.

1980ko hamarkadatik aurrera, erakundeen onarpena lortu du, lurralde zatiketa handiekin bada ere. Gernikako Estatutuak euskara Euskal Autonomia Erkidegoko berezko hizkuntza izendatu zuen eta gaztelaniarekin batera ofizial egin zuen Araba, Bizkai eta Gipuzkoan (Trebiñun eta Villaverde Turtziozen izan ezik). Nafarroa Garaian, Euskararen Legearen eraginez, herrialdeko ipar-mendebaldean (*eremu euskaldunean*) soilik da koofiziala. Iruñean eta erdialdeko beste hiri garrantzitsuetan (*eremu mistoan*), onarpen maila txikiagoa da eta traba handiagoak ditu euskarak. Nafarroako hegoaldean (*eremu ez-euskaldunean*), berriz, euskara ez dago onartuta. Ipar Euskal Herrian, euskarak ez du aginpidea duten erakunde publikoen onarpenik: hizkuntza ofizial bakarra frantsesa da.

2016ko VI. Inkesta Soziolinguistikoaren arabera, euskararen eremu osoan bizi ziren 16 urtetik gorako biztanleen % 28,4 (751.500 pertsona) zen euskalduna, eta % 16,4 (434.000 pertsona) euskaldun hartzailea.[6] Hala ere, adin tarte gazteagoak kontuan hartuta, kopurua handiagoa da. Adibidez, Euskal Autonomia Erkidegoko datuak soilik kontuan hartuta, 2016an 2 urtetik gorako 895.942 euskaldun eta 391.897 euskaldun hartzaile zeuden.[7]

> « Euskararen egiazko misterioa iraupena da, ez jatorria. »
>
> Koldo Mitxelena[8]

**Euskara**

Euskara

Euskaraz hitz egiteko gai direnak eta ulertzen dutenak batuta, Euskal Herrian, udalerrika (2011. urtea)

> % 80
> % 60
> % 40
> % 20
> % 0

**Datu orokorrak**

| | |
|---|---|
| **Lurralde eremua** | Espainia eta Frantzia; euskal diaspora |
| **Hiztunak** | 751.700[1][2][3][4] |
| **Ofizialtasuna** | Euskal Autonomia Erkidegoa eta Nafarroako Foru Erkidegoko iparraldea (Espainia) |
| **Eskualdea** | Euskal Herria |
| **UNESCO sailkapena** | 2 zaurgarria |
| **Araugilea** | Euskaltzaindia |

**Hizkuntza familia**

Euskal hizkuntzak

**Informazio filologikoa**

| | |
|---|---|
| **Hizkuntza-tipologia** | subjektua aditza objektua, SOV hizkuntza, aditza objektua subjektua, objektua aditza subjektua, objektua subjektua aditza, hizkuntza eranskari, silabadun hizkuntza, hizkuntza polisintetikoa, hizkuntza ergatiboa eta hizkuntza sintetikoa |
| **Kasu gramatikalak** | absolutibo, ergatibo, datibo, inesibo, adlatibo, ablatibo, genitibo, instrumental, komitatibo, destinatibo, kausatiboa, terminatiboa, norabidea, partitibo, prolatibo, gutxi gorabeherakoa, destinatiboa eta motibatibo |
| **Alfabetoa** | euskal alfabetoa |

**Hizkuntza kodeak**

| | |
|---|---|
| **ISO 639-1** | eu |
| **ISO 639-2** | baq eus |
| **ISO 639-3** | eus |
| **Ethnologue** | eus (http://www.ethnologue.com/language/eus) |
| **Glottolog** | basq1248 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/basq1248) eta basq1250 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/basq1250) |
| **Wikipedia** | eu (https://eu.wikipedia.org) |

## Eduki-taula

# Izena

## Etimologia

Gaur egun onartu den teoriak dioenez, hitzaren jatorria aitzineuskarako hau izan daiteke: **enau(t)si* (esan) + *-(k)ara* (era).[9][10] Bainan **enau(t)s-* > **eus-* zaila da fonetikoki.

## Euskalkietan dituen izenak

Euskarak euskalkietan hainbat izen ditu, euskara batuan onartu denaz beste: *euskera*, *euzkera*, *euskala*, *eskuara*, *eskuera*, *eskara*, *eskera*, *eskoara*, *euskiera*, *auskera*, *uskara*, *üskara*, *oskara*, *uskera*, *uskaa*, *uska*.[11]

# Sailkapena

Indoeuropar hizkuntza erromantzez inguratuta dagoen arren, euskara hizkuntza isolatua da, ez du bere familiako beste hizkuntzarik.



Euskara hizkuntza isolatua da. Mapan Europako hizkuntza ez indoeuroparrak (finlandiera, samiera, maltera, kareliera, estoniera, hungariera, Krimeako tatarera eta turkiera, euskaraz gain) ageri dira.

# Historia

*Artikulu nagusia: «Euskararen historia»*

## Euskararen jatorria eta ahaidetasunak

Euskararen jatorria ezezaguna da. Gaur egun, euskararen hizkuntzalaritza historikoan aditu direnen artean, hipotesi onartuena da euskara milaka urtez hitz egin dela Pirinioen inguruan.

Hizkuntzalaritzan egin ohi denez, euskara hemen sortu den ala inondik etorri den jakiteko, beste hizkuntzekiko ahaidetasuna bilatu zaio. Hainbat teoria egin dira euskarak kaukasoar hizkuntzekin, amazigerarekin, iberierarekin eta beste hainbatekin ahaidetasuna baduela esan dutenak. Hizkuntzen arteko alderaketarako hizkuntzalaritzak taxutu dituen metodoak erabiliz, ordea, frogatu da teoria horiek ez dutela behar besteko oinarririk. Orain arte jakin denez, beraz, beste hizkuntzen artean euskarak ez du ahaiderik (indarra izan duten baina hizkuntzalarien artean baztertuak diren teorien berri jakiteko, ikus: euskararen ahaideak, euskal substratuaren teoria, britainiar eta irlandarren euskal jatorriaren teoria).

## Aitzineuskara

*Sakontzeko, irakurri: «Aitzineuskara»*

Euskara Europan sustrai luzeena duen hizkuntza delakoan daude euskalariak; duela 8.000 bat urte euskararen aurrekari zen hizkuntza bat hitz egiten bide zen Pirinioen inguruan, eta orduz geroztik etenik gabeko historia izan bide du gure hizkuntzak inguru honetan.

Historia horretan, hizkuntzalariek gutxi gorabehera azken hiru mila urteko historia aztertu ahal izan dute. Aldi horren hasiera, berreraikitze lanen bidez ezagutzen dugu:

- Aitzineuskara zaharra: zeltak iritsi baino lehenagoko euskal hizkuntzaren dedukziozko berreraiketa. Besteak beste Joseba Lakarra, Joaquín Gorrochategui eta Ivan Igartua euskalariek egin dute berreraiketa lan hori.
- Aitzineuskara: gutxi gorabehera Kristo aurreko V. mendetik lehenengo urteraino hitz egin zen euskal hizkuntzaren berreraiketa. Koldo Mitxelenak (eta, neurri txikiagoan, Ricardo Gómezek eta Larry Traskek) egin du berreraiketa lan hori.

## Euskara erromatarren garaian


Euskal Herriko tribu protohistorikoen mugak.

Erromatarrak iritsi zirenean, euskal hiztunen multzoa Demanda mendilerrotik Garona ibairaino eta Pirinioetan Kataluniako lurretaraino zabaltzen zen. Kristo ondorengo lehen milurtekoan eremu horrek atzerakada handia izan zuen Pirinioetan eta iparraldean, batez ere Erromatar Inperioaren eraginez. Erromatarrek latina ekarri zuten berekin eta beren menpeko lurralde guztietara zabaldu zuten.

Orain arte, euskaraz ezagutzen diren lehen hitz idatziak, Akitaniako lurretan (Ipar Euskal Herria barne), Sorian, Errioxan, Zaragozan eta Huescan aurkitu dira. Pertsona izenak edo jainko-jainkosen izenak dira, eta hilarrietan eta aldaretan idatzi zituzten, K. o. I. mendetik III. mendera. Nafarroako Lerga herrian erromatarren garaiko hilarri bat topatu zuten, euskal pertsona izenekin, I. mendekoa.[12] Bestalde, toponimiari begiratuta ere, euskararen bidez azaldu diren toponimoak daude aipatutako eremu osoan.

Euskalarien artean nagusi den iritziak dioenez, garai hartan euskaraz honako tribu hauek mintzo ziren: akitaniarrak, baskoiak, barduliarrak, karistiarrak, iakatarrak eta, agian, autrigoiak. Beste ikerlari batzuek baskoitze berantiarraren teoria defendatzen dute, alegia, euskaraz mintzo zirenak akitaniarrak eta baskoiak zirela, eta mendebalderagoko tribuek indoeuropar hizkuntza zutela.



Akitaniar tribuak.

Hala ere, zaila da ulertzea nola inposatu ahal izan zieten beren hizkuntza baskoiek, Euskal Herriko leinu protohistorikoetan erromatartuena osatzen zutenek, beste *gens*-ei. Izan ere, gaztelaniazko *vascongado* hitzak ez du «baskoitua» esan nahi, baskoien zabalpenaren aldekoek adierazi ohi duten bezala, «euskalduna» baizik: XIX. mende arte nafar gehienak *vascongado*ak ziren, eta arabar eta enkartau asko ez ziren *vascongado*ak, *romanzado*ak edo *latinado*ak baizik.

Honakoak dira euskararen eremuko lurretan bizi ziren tribu protohistorikoak:

- Akitaniarrak, Julio Zesarren arabera, Garona ibaiaren eta Pirinioen artean bizi ziren. Hizkuntza propioa zuten, eta antz handia zuten Pirinioez bestaldeko herriekin. Akitanieraz (euskararen arbaso —edo, beharbada, euskararen arbasoaren ahaide— den hizkuntza) mintzo ziren. Estrabon geografoaren esanetan, akitaniarrak ez zetozen bat galiar arrazako herriekin, ez gorpuzkeran ez mintzaturiko hizkuntzan, eta iberiarren tankera zuten.
- Autrigoiak gaur egungo Bizkaiko Enkarterrin eta Arabako, Kantabriako eta Burgosko zatietan bizi ziren. Oso litekeena da haien hizkuntza indoeuroparra izatea, zeltikoa ziurrenik; izan ere, haien lurralde eremuan, garai hartakoak izan daitezkeen euskarazko toki izenak oso-oso gutxi dira, askoz gehiago dira zelta jatorrikoak.
- Barduliarrak gaur egungo Gipuzkoan eta Arabako ekialdean bizi ziren. Herri euskalduna bide zen.
- Beroiak egungo Errioxan, Arabako hegoaldean eta Nafarroako Erriberaren zati batean bizi ziren. Zeltiberiar herria zen, zeltiberieraz mintzo ziren.
- Baskoiak gaur egungo Nafarroa Garaian eta Gipuzkoako, Huescako, Zaragozako eta Logroñoko probintzien zati banatan bizi ziren. Kostaldera heltzen ziren iparraldetik (Irun aldean), Ebroren eskuinaldeko lur zerrenda bat hartua zuten hegoaldetik, eta Aragoin barneratzen ziren ekialdetik. Euskaraz mintzo ziren; baina, erromatarrak heldu zirenerako, zeltiberiera eta iberiera erabiltzen hasiak ziren hegoaldeko mugetan.
- Karistiarrak gaur egungo Bizkaian eta Arabako mendebaldean bizi ziren. Herri euskalduna bide zen.
- Iakatarrak egungo Huescan eta Lleidako iparraldean bizi ziren, eta Iaca —egungo Jaka— zuten hiriburu.

Ekialderago, baliteke andosinoak ere euskal hizkuntzaren batez mintzo izatea. Andosinoak gaur egungo Andorraren inguruan bizi ziren, eta oraingoz hipotesi onartuena da haien etnonimoak «handi» euskal hitzarekin zerikusia duela.[13]

Euskaldunek elkarrekintza anitz izan zituzten erromatarrekin, eta euskarak bai latinetik, bai haren ondorengo erromantzeetatik mailegu ugari hartu zituen, apurka-apurka bere sistema fonetikora egokituta. Hizkuntzaren egitura sintaktikoak, berriz, nortasun propioarekin dirau, eraginak gorabehera.

Erromatarrek ekarritako latinaren ezarpenak eta zabalpenak garai hartan euskara inguratzen zuten gainerako hizkuntza guztiak desagerrarazi zituen: indoeuropar hizkuntzak (galiera, zeltiberiera eta lusitaniera) eta hizkuntza ez indoeuroparrak (iberiera eta tartesiera). Euskal Herriak eutsi egin zion bere hizkuntzari; hala ere, erromatarren kokaguneen ondoko lurraldeak latinizatu egin ziren, elebidun bihurtu ziren.

## Euskara Erdi Aroan


Erdi aroko hizkuntzen eremuen mapa.

Erdi Aroan latinak garapen ezberdina izan zuen eskualdearen arabera, eta hizkuntza erromanikoak sortu ziren. Hala ere, euskarak eutsi zion latinaren eta hizkuntza erromanikoen hedapenari.

Erdi Aroan latinetik eratorritako hizkuntzek euskara inguratzen zuten:

- Gaztelania: Gaztelania Euskal Herriko hegoaldean eta mendebaldean berba egiten zen.
- Nafarroako eta Aragoiko erromantzea: Nafarroako eta Aragoiko erromantzea Euskal Herriko hegoaldean eta ekialdean hitz egiten zen.
- Okzitaniera: Okzitaniera ere aditzen eta idazten zen Euskal Herriko hiri nagusietan, Nafarroan batez ere. Hiri horietan Okzitaniatik etorritako jende multzo handiak egokitu ziren, merkatariak gehien bat. Gaskoia Euskal Herriko Iparraldean mintzatzen zen: adibidez, Baionan hizkuntza nagusienetako bat zen. Bearneraz mintzatzen ziren familia eta talde okzitaniarrak ere bazeuden Zuberoako ekialdean. Urte askotan beren hizkuntzari eutsi eta testu asko idatzi zituzten.

Arabieraz mintzo zen jende multzoa ere bizi zen Tuterako eskualdean. Hor musulmanek ia lau mendez botere politikoa izan zuten. Musulmanek 711. urtetik aurrera penintsula ia osoa mende hartu zuten, Euskal Herriaren mugaraino. Euskaldunen eremuan ez zuten kokapen iraunkorrik izan, nahiz eta hainbat razzia egin zituzten, Arabako lurretan adibidez. Nafarroan, hala ere, harreman onak izan zituzten euskaldunekin hainbat mendez.

Hebreera ere hitz egiten zuten gutxi batzuek euskal lurraldeetan. Haatik, haren erabilera bestelakoa zen, erlijioari lotuta zegoen batez ere; nahiz eta gero juduen hizkuntza nagusia tokian tokikoa izan.

Hala eta guztiz ere, euskara zen Euskal Herriko hizkuntza nagusia. Ia Euskal Herri osoan mintzatzen zen garai hartan. Dena den, nagusitasun geografiko horri ez zegokion nagusitasun administratibo edo ofizialik. Inongo erakundeak ez zuen erabiltzen euskara bere jardun administratiboan edo dokumentazio ofizialean. Hizkuntza erromanikoek hartu zioten euskarari zegokion funtzio hori. Garai goiztiar hartatik hizkuntza haiek idatziaren prestigioa bereganatu zuten, eta euskara, berriz, herri xehearekin lotuta zegoen.

Aipatzekoa da Euskal Herriaren gaur egungo mugetatik kanpo ere euskaraz egiten zela, Pirinioetako zenbait tokitan eta Errioxako nahiz Burgoseko gune jakin batzuetan, hain zuzen ere. Errioxa eta Burgos aldeko euskaldun haiek, Erdi Aroan musulmanak lur haietatik egotzi eta gero egindako birpopulaketen ondorio izan zirela dirudi.

### Beste hizkuntzekiko harremanak

Euskarak inguruko hizkuntzekin milaka urteko harremana izan du. Kristo aurreko garaietan, iberierarekin eta zelta hizkuntzekin. Kristau aroa hastean, latinarekin —erromatartzeak eta kristautzeak ekarria— eta, handik berehala, arabierarekin eta Erdi Aroko erromantze jaioberriekin (okzitaniera/gaskoiera, aragoiera edo nafar erromantze eta gaztelaniarekin).

Aro Moderno-Garaikideetan, auzoko lehiakide gogorrenak frantsesa (geroago hurbildua) eta gaztelania ofizialduak izan ditu. Berrikitan izan ezik, euskarak ez du izan historian legezko aitorpen ofizialik.

## Hedadura

### Antzinako euskara



Euskararen aztarna geografikoak. Urdinez, toponimoak; gorriz, Antzinako Erromaren sasoiko aztarna epigrafikoak (hilarriak, etab.); orban urdinez, gehieneko hedadura.

Antzinako euskararen mugak zehazterakoan, kontuan hartzen dira Akitanian, Euskal Herrian, Errioxan eta Sorian aurkitu diren hilarrietako eta beste euskarri epigrafiko batzuetako euskal hitzak, toponimian gorde diren izenak eta geografo klasikoek euskararen eskualdeko tribuei buruz idatzitakoak. Aztarna horiek erakusten dute euskaraz mintzo zela Garona ibaiaren eta Demanda mendilerroaren arteko eskualdean, eta Bizkaitik Andorraraino. Luis Núñez Astrainek 2002an egindako lanak laburbiltzen ditu gaiari buruzko azken datuak.[14]

- Katalunia: Kataluniako mendebaldeko toponimiak erakusten du han behiala euskaraz egiten zela. Joan Corominesen ikerketen ondotik onartzen da Katalunia euskalduna Urgellen eta Andorran hasten zela eta Aran, Ribagortza eta Pallarsen barna hedatzen zela. Toponimiak edo leku izenek frogatzen dute eskualde horren euskalduntasuna.
- Aragoi: Gaurko Huescako probintzia eta Zaragozako iparraldea ere euskaraz mintzo ziren. Latinak berak itzali zituen hango euskal hizkerak, baina leku batzuetan euskarak luzeago iraun zuen, Anso ibarrean, esate baterako. Interesgarria da Zaragozako Cinco Villas eskualdean (Ejea, Sádaba...) agertu den euskal pertsona izenen multzoa.
- Errioxa: Errioxako[15] eta Soriako[16] erromatarren garaiko hilarri batzuetan euskal izenak agertu ziren. Bestalde, Errioxan, batez ere, eta neurri apalagoan Burgosen, toponimo askok ere euskal jatorria dute, baina badirudi horren jatorria Erdi Aroan dela, hau da, Errekonkista garaian musulmanak lur horietatik egotzi eta gero Arabako eta Bizkaiko euskaldunekin egindako birpopulaketari zor zaizkiola euskal toponimo horiek.
- Akitania: Akitanian aurkitutako hilarriak funtsezkoak izan dira euskararen historia ezagutzeko. Bertan agertu diren hitzek euskararen hedadura zehazteko balio izan dute batetik, eta bestetik, garai hartako euskara nolakoa zen jakiteko ere. Hona hemen horietako izen eta hitz batzuk: *Bihos* (bihotz), *Belex* (beltz), *cison* (gizon), *ilun* (ilun), *losa* (lotsa), *nescato* (neskato), *sembe* (seme), *andere* (andre), *corri* (gorri).


*Herauscorritse* izeneko jainkosari eskainitako erromatar aldare-harria. Maidalena, Zuberoa.

Nabarmena denez, Euskal Herri osoa gainditzen zuen eremuan erabiltzen zen euskara. Hala ere, badirudi Nerbiotik harago eta Ebro ibarrean euskarak oso goiz egin zuela atzera, eta zenbait tokitan euskara ez zela hizkuntza bakarra, baizik eta beste hizkuntza batzuekin batera erabiltzen zela. Hasieran, zelta hizkuntzen aurrean atzera egin omen zuen, eta latinaren aurrean geroago.

### Erromatar Inperioaren ondorengo aldaketak

Kristo ondorengo III. mendean, Mendebaldeko Erromatar Inperioaren gainbehera hasi zen. Horrek euskal gizartea nekazaritzara bultzatu zuen mende batzuetan zehar. Ondorioz, latinaren eragina moteldu egin zen eta euskararen eremua sendoagotu zen bere bizi-espazioan.[17]

Hurrengo mendeetan, latinak, beste hainbat lekutan bezala, tokian tokiko hizkuntza erromanikoak eman zituen. Geroago, latin arruntaren aldaera horien bilakaerak gaskoi bihurtu ziren Pirinioen iparraldean eta gaztelania, nafar-erromanikoa eta aragoiera hegoaldean. VI. mendean, euskararen eremuko iparraldera frankoak eta hegoaldera bisigodoak iritsi ziren. Iparraldean euskarak atzerakada geografikoa jasan zuen, baina hegoaldean bisigodoen eragina askoz txikiagoa izan zen. Bisigodoak eurak ere latinizatu egin ziren eta VII menderako penintsulan ia galdua zuten euren hizkuntza. Hala ere, herri germaniarrek zenbait hitz utzi zituzten: *gerra*, *xaboi*, *sala*, *harpa*, *gisa* edo *arropa*.

VIII. mendean, arabiarrak iritsi ziren Nafarroaren eta euskararen eremuaren hegoaldera. Geroago, X. mende inguruan, erreinu kristauek arabiarrak hegoalderantz bultzatzen hasi zirenean, hutsik geratutako lurren birpopulatzeak gertatu ziren, eta euskarari dagokionez zenbait ondorio izan zituen. Batetik, badirudi euskaldunak hegoaldean ugaritu zirela Arabako hegoaldean, Errioxan, Burgosen eta Sorian eta Nafarroa Garaiko erdialdetik hegoaldera. Hala ere, eztabaida dago zenbateraino

ziren agirietan agertzen diren herritar horiek edo zenbateraino iparraldetik etorriak. Bestetik, Bizkaiko mendebaldean, Enkarterrian, hiztun erromanikoak sartu zirenez, bertako hainbat tokitako euskara galdu egin zen.




XI. eta XII. mendeen artean, Gaztelako Erresumak Bizkaia (1180), Araba (1199) eta Gipuzkoa (1200) bereganatu zituen. Sarritan interpretatzen da gertaera horiek ekarri zutela Euskal Herriko administrazioetan hizkuntza ofiziala gaztelania izatea. Izan ere, garai hartan garatzen ari zen gaztelania. Euskararen mugetan jaio zen eta Errekonkistan lortutako botere politikoaren bidez, Gaztelak menderatuz joan zen lurraldeetan ezarri zuen, beste erromantze batzuk zokoratuz. Nafarroako Erresumari dagokionez, Nafarroako errege Antso Azkarraren garaian euskara *lingua navarrorum* izendatu zen (1167) alegia, nafarren hizkuntza.

XIII–XVI mendeen artean, Gaztelako Erresumak Nafarroako Erresuma konkistatzea amaitu zuen (1200–1512). Beraz, botere politikoaren hizkuntza idatzia (gutxi batzuek zerabiltena) erromantze nafarra izatetik Gaztelania izatera pasatu zen.




Euskararen balizko hedaduraren garapena azken 2000 urteetan

XVI–XVII. mendeek gure literatura idatziaren hasiera markatu zuten. Izan ere, 1545. urtean argitaratu zen lehen liburua euskaraz "Linguae Vasconum Primitiae". Poema liburua da eta haren autorea, Bernart Etxepare, Nafarroa Behereko herri txiki bateko apaiza izan zen. Hala ere, gogoratu behar da 1539. urtean Frantzisko I. Frantziako erregeak latinaren ordez administrazioan frantsesa erabiltzeko agindua ezarri zuela eta Ipar Euskal Herriko hizkuntza gaskoia izatetik frantsesa izatera pasatu zen. Hala bada, ez agirietan, ez testu teknikoetan euskarak ez zuen zabalkunderik izan. Hegoaldean, hizkuntza mintzatuari dagokionez, Arabako hegoaldeko hainbat eskualdetan eta Nafarroa Garaiko hegoaldean gaztelaniak euskarari gaina hartzen jarraitu zuen poliki-poliki. Euskarak eusten zion, nola edo hala, baina galdua zuen prestigioaren eremua. Euskara ezin zen erabili erakundeetan, ez eskolan... eta galtzeko atea zabalik geratu zen.

XVIII. mendean, euskarak atzerakada handia izan zuen Arabako lautadan, beteak beste, Gasteiz hiria (mendebaldeko euskararen sorgune nagusia izan zena) ordurako erabat erdaldundua zelako, eta handik eragin erdaltzailea zetorrelako inguruko lurretara. Ipar Euskal Herrian, Iraultza Frantsesaren garaipenak (1789) foruak deuseztatu zituen; geroago, 1793. urtean frantsesa nahitaez erabiltzeko betebeharra ezarri zen legez. Bestalde, euskarak lurralde zati handi bat eta hiztun kopuru handi bat galdu zuen Nafarroa Garaian. Euskaldunen Amerikarako joerak ere Euskal Herriko landagune askotan (euskaldunenetan, beraz) eragin handia izan zuen. Mendearen bukaera aldean, gainera, euskal herriaren historia garaikidea markatuko zuten gertakari erabakigarriak izan ziren: foruak deuseztatzea, industrializazioaren hasiera eta euskal nazionalismoaren eta sozialismoaren hastapenak.

1800. urterako Arabako euskararen galtzea ia erabat gauzatu zen, iparraldeko hainbat ibarretan izan ezik, eta Nafarroa Garaian atzerapena nabarmena egin zen. Nafarroa Garaiko erdialde guztian, Iruñerrian eta Pirinioetako ibar batzuetan euskara desagertzen edo ahultzen ari zen garai hartan. Mende hartan Euskal Herriak pairatu zituen etengabeko gerrek eta haien ondorioz gertatu zen foruen edo lege zaharren galerak bizkortu egin zuten euskararen atzerakada.

## Gaur egungo euskararen mugak

Euskara Araba, Bizkaia, Gipuzkoa, Lapurdi, Nafarroa eta Zuberoa herrialdeetan hitz egiten da. Euskal Herritik kanpo, Nafarroa Beherearekin muga egiten duten Gaskoniako herrietan eta Zuberoarekin muga egiten duen Biarnoko mugaldean (Oloroeko kantonamenduan: Eskiula edo Jeruntze herrietan...) entzun daiteke halaber. Hala ere, Euskal Herriko eskualde horietaz gain, euskara nonahi entzun eta erabil daiteke. Haur eta gazte gehienenek euskaraz ikasten dute eta hiztunen kopurua etengabe igotzen ari da. Euskara, aspaldiko partez, muga estuak puskatzen ari da.

Euskal diasporan ere, euskara milaka lagun batzuk gorde edo berreskuratu dute, besteak beste, tokian tokiko euskal etxeei esker.[19] Oro har, milioi bat lagun inguruk hitz egiten duten hizkuntza dugu.

Euskal Herrian bertan euskararen hedadura ez da berdina lurralde guztietan.

> Hizkuntza berezia da, hitzetan, osakuntzan eta ahoskeran, eta arrotzentzat ulertezina da, baita hitzik ñimiñoenetan ere. Gaur egun mendialdera jotzen ari da atzera, hamarkadaz hamarkada atzerago, alde guztietatik eraso egiten baitzaio, nazioaren alde ilustratuenak gutxietsia ama gaiztoa bailitzan, eta pentsatzekoa da gainbehera gero eta nabarmenagoa izango dela hemendik aurrera. Mende baten buruan, beharbada, hizkuntza bizien artetik desagertua izango da.
>
> — *Wilhem von Humboldt (1801). II. faszikulua. Euskaldunen herrian barrena*[18]

## Euskararen ofizialtasuna

Euskarak, historian zehar, ia ez du onarpen ofizialik izan. Herriaren hizkuntza izan da beti, baina inoiz ez da erabili administrazioan. Gaur egun, Euskal Herriko eremu batzuetan hizkuntza koofiziala da.

Gaur egun, euskaraz hitz egiten den lurraldeak ez dauka batasun politikorik, Euskal Herria politikoki hiru administraziotan banatuta baitago. Administrazioak honako hauek dira:

- Espainian: Euskal Autonomi Erkidegoa (Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa) eta Nafarroako Foru Erkidegoa (Nafarroa Garaia).
- Frantzian: Ipar Euskal Herria (Lapurdi, Zuberoa eta Nafarroa Beherea), Pirinio Atlantikoak izeneko departamenduan sartuta.

Administrazio bakoitzak euskararen erabilerari tratamendu diferentea ematen dio eta, horren ondorioz, euskara arautzen duten bost araudi ezberdin daude. Egoera nahasi hau ez da batere mesedegarria euskararentzat.

1. Euskal Autonomia Erkidegoa: euskara ofiziala da, gaztelaniarekin batera, Euskal Autonomi Erkidegoan. Euskararen legea 1982. urtean onartu zen.
2. Nafarroako Foru Erkidegoa: Hiru eremutan banatuta dago. Ofizialtasun partziala deitu izan zaio Nafarroa Garaian euskarari eman zaion estatusari, bai eta bere baitan hartzen dituen hiru erregimenei ere. Nafarroako Garaiko euskararen legea 1986. urtean onartu zen eta horren arabera herrialdea hiru eremutan banatu zen euskarak hartzen zuen babesaren arabera.
    - Eremu euskalduna (iparraldea): euskara ofiziala da, gaztelaniarekin batera, Nafarroako Foru Erkidegoko eremu euskaldunean. Eremu horretan lurraldearen iparraldea bakarrik sartzen da. Nafarroa Garaiko biztanleen % 10 bizi da eremu horretan.
    - Eremu mistoa: euskara ez da ofiziala eremu mistoan. Hala ere, Nafarroako euskararen legeak eremu mistoko herritar guztiei ezagutzen die Nafarroako herri-administrazioarekiko harremanetan euskara erabiltzeko eskubidea. Era berean, legean aurreikusten da herri-

administrazioek zehaztu behar dutela zein lanpostu publikotarako izango den beharrezkoa euskaraz jakitea. Eremu mistoko eskoletan euskaraz ikas daiteke eta euskara ikasgaiaren irakaskuntza jaso daiteke, horrela nahi izanez gero. Hegoaldeko nafarren % 53 bizi dira eremu horretan.
   - Eremu ez-euskalduna (hegoaldea): euskara ez da ofiziala eremu ez euskaldunean. Nafarroako eskualderik zabalena da hau, lurraldeko erdialde eta hegoalde gehiena hemen kokatuta dago. Hizkuntza ofizial bakarra gaztelania da. Hegoaldeko nafarren % 37 hor bizi da.
3. Ipar Euskal Herria: Euskara ez da hizkuntza ofiziala. Ipar Euskal Herriko hizkuntza ofizial bakarra frantsesa da, Frantzian ofizial den hizkuntza bakarra. Euskara ofizial edo koofizial ezin izendatu[20] eta Euskal Elkargoak, euskarari aitortza ofiziala egin dio 2018. urtean.[21]


Euskararen ofizialtasuna Euskal Herrian.

## Demografia

### Hiztun kopurua


Euskaraz hitz egiteko gai direnak eta ulertzen dutenak batuta, Euskal Herrian, udalerrika (2011. urtea)

> % 80
> % 60
> % 40
> % 20
> % 0

Euskaraz dakien pertsona kopuruari buruzko azken azterketa 2016. urtean egin zen. Eusko Jaurlaritzak, Nafarroako Gobernuak eta Ipar Euskal Herriko Euskararen erakunde publikoak egin zuten, elkarlanean. Datuak 16 urtetik gorako pertsonenak dira; beraz, kontuan izanda euskararen ezagutza handiagoa dela 16 urtetik beherakoen artean, euskaldunen ehuneko erreala handiagoa da.

Euskal Autonomia Erkidegoari dagokionez,[22] 2016an 16 urtetik gorako biztanleen % 33,9 elebiduna zen (631.000 biztanle) eta % 19,1 elebidun hartzailea, alegia, euskara ulertzen zuten baina ez zuten egoki hitz egiten (356.000 pertsona). Erdaldun elebakarrak % 47 ziren (877.000 pertsona). Gipuzkoa zen euskaldunen ehuneko handiena zuena (% 50,6 elebidun eta % 20,4 elebidun hartzaile); Bizkaian % 27,6 ziren elebidun eta % 17,8 elebidun hartzaile; eta Araban % 19,2 ziren elebidun eta % 18,4 elebidun hartzaile. Azken urteetako joera euskararen ezagutzaren igoera da, bai elebidun osoen kasuan bai elebidun hartzaileen kasuan. Nabarmena da gazteen arteko igoera (% 71,4 elebidun dago 16 eta 25 urte arteko tartean), eta Arabako aldaketa (% 7 elebidun zegoen 1991 eta % 19,2 ziren 2016an).

Trebiñuko barrendegian, 2012an egindako azterketaren datuak hartuta,[23] biztanleen % 22 elebiduna zen eta % 17 elebidun hartzailea. 2002tik 2012ra arteko tartean elebidunen ehunekoa bikoiztu egin zen. Adin tarteka, elebitasuna handiagoa da adin txikiagoetan: 15 urtetik beherakoen artean, % 65ek euskara ezagutzen dute.

Villaverde Turtzioz barrendegian, berriz, 2002ko datuak ikusita,[24] biztanleen % 20,70 elebiduna zen eta % 16,9 elebidun hartzailea. Kontuan izanda 1986an euskaldunak % 3,4 besterik ez zirela, eta Enkarterrietako joera bera erakutsi dutela euskalduntzeari dagokionez, gaur egun euskaldunen ehunekoa askoz handiagoa izango da.

Nafarroari dagokionez, 2016ko azterlanak[6] erakutsi zuen 16 urtetik gorakoen artean elebidunen kopurua % 12,9koa zela (69.000 pertsona), eta % 10,3 (55.000 pertsona) elebidun hartzailea zela. Elebidunen kopuruak gora egin du azken urteetan (1991n baino 3,4 puntu gehiago), bai eta elebidun hartzaileen kopuruak ere (5,7 puntu gehiago). 16 eta 25 urte arteko gazteen artean elebidunak % 25,8 dira.



Euskararen erabilera eta ezagutza, Araba, Bizkaia eta Gipuzkoan, 2016an.

Ipar Euskal Herrian,[25] 2016an, % 28,4 elebidunak ziren eta % 16,4 elebidun hartzaileak. Joera beheranzkoa da. Hala ere, azken urteetan joera hori moteldu egin da.

Euskal Herritik kanpo, badaude oraindik ere euskaraz aritzen diren komunitateak Amerikan.

### Erabilera

*Sakontzeko, irakurri: «Euskararen erabilera»*

Euskararen erabilera neurtzen duten bi azterlan egiten dira periodikoki, bata inkesta soziolinguistikoaren baitan herritarrei galdetuta osatzen dena,[6] eta bestea kaleko erabilera erreala behatuta osatzen dena.[26]

2016ko inkesta soziolinguistikoak zioenez, 16 urte edo gehiagoko biztanleen % 25,7k euskara erabiltzen zuen neurri batean ala bestean:

- % 16,5ek euskararen erabilera trinkoa egiten zuen, hau da, euskara erdara beste edo gehiago erabiltzen zuen eguneroko jardunean.
- % 9,2k euskara erabiltzen zuen, baina erdara baino gutxiago.

Gainerako % 74,3k erdara erabiltzen zuten beti edo ia beti. Kontuan hartu behar da, hala ere, azken hauen artean bazela multzo txiki bat (% 5,2) oso gutxitan bada ere euskara ere erabiltzen zuena.

Erabileraren ehunekoak, ezagutzaren kasuan bezala, desberdinak ziren lurraldez lurralde. Euskararen erabilera trinkoa egiten zutenak % 20,1 ziren EAEn, % 6,6 Nafarroan eta % 8,1 Ipar Euskal Herrian.

**Euskararen erabilera VI. Inkesta Soziolinguistikoaren arabera (2016)**

| Hizkuntza | Ehunekoa |
|---|---|
| Euskararen erabilera trinkoa | 16,5 |
| Euskara erdara baino gutxiago | 9,2 |
| Euskara pixka bat | 5,2 |
| Erdara | 69,1 |

Bestalde, kalean neurtutako erabilerari dagokionez, 2016an euskararen erabilera % 12,6koa izan zen, gaztelaniaren erabilera % 76,4koa, frantsesaren erabilera % 8,3koa eta beste hizkuntzen erabilera % 2,7koa. Lurraldeka, Gipuzkoan jaso zen erabilera-mailarik altuena, % 31,1ekoa; Bizkaian % 8,8; Nafarroan % 6,7, Ipar Euskal Herrian % 5,3, eta azkenik, gutxien erabiltzen zen lurraldea Araba zen, % 4,6ko erabilerarekin.

| Euskararen kaleko erabilera (2016) | |
|---|---|
| Hizkuntza | Ehunekoa |
| Euskara | 12,6 |
| Gaztelania | 76,4 |
| Frantsesa | 8,3 |
| Beste hizkuntza bat | 2,7 |

## Euskalkiak eta euskara batua

### Euskalkiak

*Sakontzeko, irakurri: «Euskalki» eta «Euskal Herriko hizkerak»*



Euskalkien hedadura

Mendebalekoa | Nafarra | Zuberotarra | Erdialdekoa | Nafar-lapurtarra

Euskalkiak euskararen dialektoak dira. Sortzen lehena mendebalekoa izan zen, VIII. mendearen inguruan, Asturiasko erresumak Araba-Bizkaietan zuen eraginagatik segur aski; eta hurrengo mendeetan eratu ziren gainerako euskalkiak. Aurretik, euskarak batasun handia zuen eta Euskal Herriak izandako zatiketa politikoen eraginez sortu ziren euskalkiak bost sorguneetan.[27][28][29]

1729an, Manuel Larramendi jesuitak *El Imposible Vencido. Arte de la Lengua Vascongada* izeneko euskararen gramatika bat argitaratu zuen Salamancan. Bertan hainbat dialekto edo euskalki bereizi zituen: gipuzkera, bizkaiera, nafarrera eta lapurtera, eta azken bi horiek bat bera zirela jo zitekeela adierazi zuen.

Luis Luziano Bonapartek euskalkien beste banaketa bat egin zuen, egundaino indar handiz iritsi dena. Euskaltzaindiko lehen presidente Resurreccion Maria Azkuek (1864–1951) Bonaparteren banaketa berrikusi zuen. Besteak beste, erronkariera (1991n hil zen azken hiztuna) euskalki berezitzat jo zuen, Bonapartek zubereraren barnean sailkatu arren.

1997an Koldo Zuazok eginiko sailkapen berriaren arabera, berriz, euskalkiak honela izendatu dira:

- Mendebaleko euskara (izendapen zaharrean, bizkaiera).
- Erdialdeko euskara (gipuzkera).
- Nafarrera.
- Nafar-lapurtera.
- Ekialdeko nafarrera: Zaraitzuera eta Aezkoako hizkera.
- Zuberera.

Tradizioan, gipuzkera, bizkaiera, lapurtera eta zuberera izan dira euskalki literarioak, hau da, euskal literatura egiteko, aldaera horiexek erabili izan dira. Mendeetan zehar, lapurtera (Ipar Euskal Herrian) eta gipuzkera (Hego Euskal Herrian) izan dira euskalki erabilienak, maila jasoan. Bizkaierak, era berean, erabilera handia izan zuen XX. mendearen hasieran, Bizkaian Sabin Aranaren abertzaletasunak izan zuen indarrak bultzaturik.

### Euskara batua

*Sakontzeko, irakurri: «Euskara batua»*




Euskarazko ereduetan matrikulatutako eskola umeen ehunekoa (2000-2005).

1960ko hamarkadan, euskara batuaren sortze prozesuari ekin zitzaion, euskalkien arteko zatiketa gainditzeko eredu estandarizatuari, alegia. Bizitzaren esparru guztietara zabaltzeko eta, finean, egungo gizartean aise moldatzeko oinarriak eman zizkion batuak hizkuntzari. 1963an hainbat euskalarik Euskal Idazkaritza izenekoa sortu zuten Baionan eta euskara batuaren arauak erabakitzeko lanean jardun zuten urtebetez Txillardegiren gidaritzapean. 1964an jendaurreko ekitaldian aurkeztu zutituzten Bainoako Biltzarra-ren erabakiak. Data hori mugarritzat hartzen dute askok ondorengo bilakaera kontutan izanda. Zehazkiago, 1968an Euskaltzaindiak Arantzazuko santutegian (Oñati, Gipuzkoa) egin zuen batzarrean abiatu zen batasun prozesutik sortu zen euskara batua. Baionako erabakiak abiapuntu eta oinarri izan ziren Arantzazuko batzarrean.[30]

Euskaltzainek Arantzazuko batzarrean euskara bateratzeko lehenengo arau multzoak finkatu zituzten, idatzian erabili beharreko ortografia, morfologia, deklinabidea eta neologismoei buruzko arauak emanez. Hizkuntzaren batasunerako, gipuzkera eta lapurtera euskalkiak hartu ziren oinarritzat, baina gainerako euskalkien berezitasunak eta aldaerak ere kontuan hartuta.

Batasuna ez da bat-bateko gauza izan, eta, nahiz eta neurri handi batean egina dagoen, aurrera doan langintza da oraindik ere. Izan ere, Euskaltzaindiak pixkanaka onartu eta argitaratu ditu euskararen alorrak finkatzeko arauak eta gomendioak, eta jardun horretan segitzen du gaur egun ere.

## Hizkuntzaren egitura

Morfologikoki hizkuntza eranskaria da, tipologia ergatibokoa edo aktibokoa (deskribatzailearen ikuspegi teorikoaren arabera). Hitzen ordena neutroan subjektua objektuaren aurretik doa, eta objektua aditzaren aurretik (SOV ordena).

### Ezaugarri fonologikoak

Euskararen sistema fonologikoak bost bokal ditu: /a/, /e/, /i/, /o/, /u/ (horiei zubereraren /y/ gehitu behar zaie). Munduan hedatuen dagoen tipo bokalikoa da. Beraz, euskara batez bestekoaren barruan dago. Diptongoekin ez da berdin gertatzen: euskarak bost dauzka (goitik beherakoak deritzen motakoak), /ai/, /ei/, /oi/, /au/ eta /eu/. Horrek nolabaiteko konplexutasuna ematen dio bokalismoari, eskuarki gaztelaniarenaren oso antzekoa denari (ekialdean /ui/ diptongoa ere bada, baina haren erabilera mugatua da oso).

Kontsonanteei dagokienez, euskarak, barietate estandarrean, 21 unitate dauzka. Sistemaren oinarriak hauexek dira: alde batetik, ahostun / ahoskabe oposizioa (kontsonante ahoskabeak alde batean eta ahostunak bestean, baina bakarrik herskarien artean) eta, bestetik, artikulazio moduen zatiketa hirukuna: badaude kontsonante herskariak (/p/, /t/, /k/, /b/, /d/, /g/), frikariak (/s/, /z/, /x/, /j/) eta afrikatuak (/tz/, /ts/, /tx/). Ozenek osatzen dute kontsonantismoa (sudurkariek eta urkariek, dardarkari bakunen eta anizkunen artean oposizioa dagoela) eta, ekialdeko eskualde batzuetan, aspirazioak (/h/), frikari glotala bera. Oro har, sistema kontsonantikoak ez dauka ezaugarri bereziki deigarririk, salbu eta, agian, fonema frikari eta afrikatuen kopuru handi samarrean.

Euskararen azentua intentsiboa izan ohi da. Ezin da errazki azaldu zertan datzan, zubereraz izan ezik, euskalki horretan azentuazioa finkoa baita, hitzeko azkenaurreko silaban. Beste euskalkietan, arau hauek dute indarra:

1. hitzaren erroa monosilabikoa denean, hitzak berak silaba gehiago izanik ere, azentua lehen silaban doa: *lúrra* < *lurr-a*, *lúrretan* < *lurr-etan*;
2. erroa bisilabikoa bada eta bokalez bukatzen bada, kasu horretan ere lehen silaban doa azentua: *méndi*, *áte*;
3. beste kasuetan, silaba anitzetako hitzetan, azentua azkenaurreko silaban doa (*gizón, gizóna*) eta bigarren mailako azentu bat gehitu dezakete hitzaren bukaeran, hitzak lau silaba edo gehiago dituenean (*gizónarentzàt*).

## Ezaugarri morfologikoak

Egitura morfologikoaren aldetik, euskara hizkuntza eranskarien barruan dago. Hizkuntza multzo horretan, morfemen arteko mugak argi eta garbi azaltzen dira, eta segmentu morfologikoetan esanahi bana adierazten da. Ezaugarri hori, morfemen arteko bereizketa gardena, euskarari aplikatu dakioke eskuarki. Hala ere, zenbait alor gramatikaletan, osagai morfologikoen arteko zatiketa eta esanahia duten unitateekiko lotura ez dira hain begi bistakoak.

### Izen morfologia

Izen morfologiari dagokionez, euskara genero gramatikalik gabeko hizkuntza da. Haren ezaugarrietako bat da izenen flexio aberatsa: izenek, izenordainek eta adjektiboek osatutako sintagmek kasuak hartzen dituzte: postposizio sintagmak dira (euskarak deklinabidea duela esan izan den arren, ez baita oso zehatza hori; berez, postposizioak dira, eta ez deklinabide kasuak).[31] Postposizio sintagma horiek, deskripzioen arabera, 16 edo 18 dira. Egia esan, hamar kasu daude atzizki bakuna dutenak. Horien artean hauexek: absolutiboa (*etxea*, singularrean), ergatiboa (*etxeak*), datiboa (*etxeari*), genitiboa (*etxearen*), instrumentala (*etxeaz*), lokatibo edo inesiboa (*etxean*), ablatiboa (*etxetik*), adlatiboa (*etxera*), lokatibo adnominala (*etxeko*) eta prolatiboa (*etxetzat*). Absolutiboaren ukoak partitiboaren erabilera dakar berekin (*etxerik ez du*). Horren funtzionamendua paradigma numeral mugagabera mugatua dago eta, batzuetan, ez da sisteman egoteko eskubide osoa duen kasutzat hartzen.

Atzizki bakunean oinarritzen diren postposizio sintagma hauetaz gain badira atzizki konposatu itsatsia duten beste postposizio batzuk. Horiek sortzeko, genitiboaren edo adlatiboaren forma ondoren doan beste atzizki batekin konbinatzen da. Kasu konposatu horiek hauexek dira: soziatiboa edo komitatiboa (*etxearekin*), hurbiltze adlatiboa edo direkzionala (etxerantz), muga adlatiboa (*teliko* edo *terminatibo* ere deitua) (etxeraino), destinatiboa (edo benefaktiboa) (*etxearentzat*), motibatiboa (edo kausala) (*etxearengatik*) eta destinatiboa (*etxerako*). Postposizio horietan guztietan, bereizten ahal dira, alde batetik, oinarrizko atzizkia (genitiboa edo adlatiboa) eta, bestetik, berariazko atzizkia. Adibidez, *etxe-a-ren-tzat* (artikuluari dagokion *-a-* bat barne) edo *etxe-ra-ino.* Ikuspegi historikotik, zenbait formaren kasuan, gaur egun duten itxura bi atzizki batzearen ondorio da, aurreko adibideetan bezala, edo paradigmaz kanpoko osagaiei esker gorpuztu da, kausalean edo, kasu konposatuen artean, lokatibo adnominalean gertatu den moduan.

Lekua adierazten duten postposizioetan (lokatiboa, ablatiboa, adlatiboa eta azken honen oinarrian eratzen diren kasu konposatuetan) erreferentzia biziduna duten izenek atzizki osagarri bat erakusten dute (*-ga(n)-*), gehienetan genitiboarekin konbinatuta agertzen dena: ablatiboaren kasuan honako forma hauek konpara daitezke, *etxe-tik* eta *gizon-a-ren-gan-dik*, edo lokatiboaren kasuan beste hauek, *etxe-a-n* eta *gizon-a-ren-gan*.

Horiek guztiak postposizio itsatsiak dira. Badira beste gisa bateko batzuk, postposizio askeak deitzen ditugunak. Horrela osatzen dira postposizio askeko paradigmak: *etxe ondoan*, *herritik hurbil*, *maldan behera*, eta abar.

Postposizio sistema horrek hiru forma edo paradigma multzo dauzka: bat singularrerako, beste bat pluralerako eta beste bat numero marka gaberako (*mugagabe* deitu izan da gramatiketan), hots, artikulurik ez daukan eta, numero gramatikalari dagokionez, indiferentea den horretarako. Ikus bedi lagin hau, *liburu* izenerako:

| Kasua/Numeroa | Singularra | Plurala | Mugagabea |
|---|---|---|---|
| **Absolutiboa** | liburu-a-Ø | liburu-ak | liburu-Ø |
| **Ergatiboa** | liburu-a-k | liburu-e-k | liburu-k |
| **Datiboa** | liburu-a-ri | liburu-e-i | liburu-ri |
| **Genitiboa** | liburu-a-ren | liburu-e-n | liburu-ren |
| **Lokatiboa** | liburu-a-n | liburu-e-ta-n | liburu-tan |

Euskal kasuak antolatzeko sistema dela eta, aipatu behar da haren funtsezko ezaugarri bat: izaera sintagmatikoa da, alegia, kasua markatzen duen atzizkia sintagma edo talde nominalaren azken osagaiari gehitzen zaio, ez osatzen duten guztiei: *liburu-an irakurri zuen, liburu har-tan irakurri zuen, liburu erosi berri-an irakurri zuen.* Berezitasun hori numero pluralaren adierazpenera ere zabaltzen da: sintagmako azken osagaia bakarrik agertzen da markaturik plural gisa: *liburu berri-ak, liburu berri hori-ek.* Sistemaren beste bereizgarri bat, hizkuntza aglutinatzaileetan gertatu ohi dena, forma nominaletan desinentzien markak metatzeko aukera da (elipsiaren ondorio gisa): *lagun-a-ren-e-tik,* genitiboko *-ren-* atzizkia eta ablatiboko *-tik* atzizkia metaturik.

### Aditz morfologia

*Sakontzeko, irakurri: «euskal aditz» eta «euskal adizki»*

Euskarazko aditzaren morfologia konplexuagoa da izenarena baino. Kategoria unibertsalak ez ezik (tenpusa edo aldia, aspektua, modua, numeroa eta pertsona), euskaraz forma sistema jori bat dago: aditz batzuetan (dozena bat, aditz laguntzaileak barne) forma analitiko edo perifrastikoak (eramaten dut), alde batetik, eta, bestetik, forma sintetikoak edo trinkoak (*daramat*, *eraman* aditz berekoa) bereizten dira; horrez gain, konjugazio orokor bat dago, pluripertsonala deritzona, non aditzaren ekintzan diharduen edo parte hartzen duen bakoitzarentzat markak ageri baitira; eta gainera konjugazio alokutibo bat ere bada, formak modu batean edo bestean osatzerakoan entzulearen sexua kontuan hartzen duena (hiketa).

Forma sintetikoen bidez, aspektuaren esanahi progresiboa adierazten da, forma perifrastikoen esanahi puntualaren kontrakoa: *dator* alde batetik, eta *etortzen da* bestetik; *darama* alde batetik, *eramaten du* bestetik (*aditz estatibo*etan, ordea, erlazio hori ez da gertatzen: *daki, dakusa*). Adibideotan ikus daitekeenez, forma perifrastikoen aditz laguntzailea *(da / du)* aldatzen ahal da eta aditzaren izaera semantikoaren arabera benetan aldatzen: aditza iragangaitzen taldekoa bada (edo, hobe, adituek «inakusatiboak» deitzen dieten horretakoa) laguntzaileak *izan*-eko formak hartzen ditu. Aitzitik, aditza iragankorra bada edo iragangaitza baina aktiboa bada, laguntzailea **edun* paradigmatik hartzen da (forma hori ez dago dokumentatua, horregatik izartxo batekin markatzen da):

| | izan | | *edun | |
|---|---|---|---|---|
| | Orainaldia | Lehenaldia | Orainaldia | Lehenaldia |
| 1. pertsona singularra | *naiz* | *nintzen* | *dut* | *nuen* |
| 2. pertsona singularra | *zara* | *zinen* | *duzu* | *zenuen* |
| 3. pertsona singularra | *da* | *zen* | *du* | *zuen* |
| 1. pertsona plurala | *gara* | *ginen* | *dugu* | *genuen* |
| 2. pertsona plurala | *zarete* | *zineten* | *duzue* | *zenuten* |
| 3. pertsona plurala | *dira* | *ziren* | *dute* | *zuten* |

Lau aditz laguntzaileen (*izan, edun/ukan, edin* eta *ezan*) taula osoa, non aditz laguntzaileen jokaera ikus daitekeen.

**edun*-etik datorren laguntzailearekin osaturiko aditz multzoetako subjektuek ergatiboaren marka daukate (*-k* singularrean). Esan den bezala, ezaugarri hori egitura iragankorrei *(Anek liburua irakurri du)* ez ezik, esanahi aktiboko egitura iragangaitzek osaturiko azpitalde txiki bati ere badagokio *(Anek ondo dantzatzen du, emanaldiak luze iraun du)*. Horregatik, egile batek baino gehiagok pentsatzen du euskara ez dela zehazki hizkuntza ergatibo bat, kontzeptua ezaugarri morfologiko eta sintaktikoetatik abiaturik definitu ohi den moduan, egitura aktiboko hizkuntza bat baizik.

Konjugazio edo aditz komunztadura pluripertsonalak adizki bakar batean partaide batzuk biltzen ahal ditu: subjektua, osagarri zuzena (gehienetan, markatu gabe) eta zeharkako osagarria. *Darama* adizkia *daramakio* adizkiarekin alderatuz gero, berehala atzematen da ekintzako hirugarren partaidea, zeharkako osagaiarena egiten duena. Ikus ditzagun beste adibide batzuk:

- *ekarri d-i-da-zu:* laguntzaileko *d-* orainaldiaren adierazlea da, *-i-* artizki bat da, *-da-* singularreko lehen pertsonaren adierazlea, eta *-zu* singularreko bigarren pertsonarena.
- *ekarri d-i-o-zu:* laguntzaileko *d-* orainaldiaren adierazlea da, *-i-* artizki bat da, *-o-* singularreko hirugarren pertsonaren adierazlea, eta *-zu* singularreko bigarren pertsonarena.
- *ekarri d-i-gu-te:* laguntzaileko *d-* orainaldiaren adierazlea da, *-i-* artizki bat da, *-gu-* pluraleko lehen pertsonaren adierazlea, eta *-te* pluraleko hirugarren pertsonarena.
- *ekarri z-i-z-ki-gu-te-n:* laguntzaileko *z-* lehenaldiaren adierazlea da, *-i-* artizki bat da, *-z-* pluralaren adierazlea, *-ki-* beste artizki bat (datibozko markarekin lotua), *-gu-* pluraleko lehen pertsonaren adierazlea, *-te-* pluraleko hirugarren pertsonarena, eta *-n* lehenaldiaren marka da.

Adizkiak, bereziki konjugazio pluripertsonalaren barruan, oso modu ikusgarrian zailtzen ahal dira, adibide hauek frogatu bezala (egiazko kasuak dira, baina gutxi erabiliak): *ziezazkiguketen*, *z-ieza-z-ki-gu-ke-te-n* morfemetan zatitua, edo *generamazkionan* (emakume bati hika hitz egiten zaionean), *ge-ne-ram(a)-z-ki-o-na-n* morfemetan zatitua.

Azkenik, konjugazio alokutiboak solaskidearen sexuaren arabera bereizten diren adizki-paradigmak biltzen ditu. Adizki horiek orokorrei buruz diferenteak dira, ez bakarrik hizlariak espresuki bere solaskidea aipatzen duenean (*ikusi duk* [mask.], *ikusi dun* [fem.]), hori beste aditz pertsona bati baitagokie, baizik eta solaskideak ekintzan parte hartzen ez duenean ere bai: *liburu hau irakurri diat* (gizon bati hitz egiten zaionean), *liburu hau irakurri dinat* (emakume bati hitz egiten zaionean); adizki markatugabea, solasaldiaren erreferentziarik egiten ez duena, *liburu hau irakurri dut* esaldian dago. Forma berezi horien erabilera harreman eta egoera jakin batzuetara mugatuta dago: erabiltzen diren barietateetan, aditz-joko alokutiboa arrunta da anai-arreben artean eta adin bertsuko adiskideen artean; ohikoagoa, dena den, gizonezkoen artean emakumezkoen artean eta harreman mistoetan baino. Bestelako egoeretan forma alokutiboen erabilera urria da, edo ez da gertatzen.

## Ezaugarri sintaktikoak

Euskaraz, hitzen ordena SOV (Subjektua Objektua Aditza) izan ohi da, marka ergatiboa duten hizkuntzetan oso zabaldua dagoena. Hala ere, euskarak malgutasun sintaktiko nabarmena du. Esaldien mailako ordenarik ohikoena (*Jonek*(S) auto *berria*(O) *erosi du*(V)) izenen eta postposizioen arteko harremanarekin bat dator (euskaraz ez dago preposiziorik): *aulkiaren atzean*, *iritzi horren aurka*. Gaztelaniatik harturiko preposizioak, euskarak onartu eta gero, beste postposizioak bezala portatzen dira: iritzi horren kontra. Izen sintagmaren eta haren genitibozko osagarriaren arteko ordena (*aitaren etxea*) bat dator tipologikoki hitzen oinarrizko ordenarekin. Gauza bera esan daiteke egitura konparatiboez: hauetan, konparazioaren bigarren osagaia adjektiboaren –hau dagokion graduan– aurretik agertzen da (*zu baino gazteagoa*).

Mendeko perpaus erlatibodunak laguntzen duten substantiboaren aurretik joan ohi dira ([erosi berri dudan](Rel) liburua). Hala ere, hori ez da modu bakarra klausula erlatibodunak sortzeko: maila batzuetan zeina izenordaina erabiltzen da, erromantzearen egituraren antzera, hots, erlatiboa substantiboaren ondoren. Gaurdaino ia-ia iraun ez duten eraikuntza zaharretan, erlatiboa erreferentearen atzetik ere bazihoan, hala nola: *monument ageri eztiradenak* (Rel) *bezala zarete* (Leizarraga, 1571, Lukas XI, 44). Joskera hori oraingoarekin alderatzen ahal da (*ageri ez diren* (Rel) *monumentuak bezala(koak) zarete*). Barne erlatiboko klausulak dira, seguru asko. Horrenbestez, euskarak izan litezkeen aukera tipologiko guztiak dauzka mendeko esaldi erlatiboak osatzeko.

## Ezaugarri lexikoak

Euskararen lexikoa da hizkuntzaren gainean gutxien ezagutzen den kontuetako bat eta horrek bide eman die balizko iritzi etimologiko guztiei, fundamentuarekin edo gabe. Zoritxarrez, azken hauek izan dira nagusi historian zehar. Badakigu euskara latinezko eta erromantzezko hitzez elikatu dela lotsarik gabe. Mailegu batzuk begi bistakoak dira (*bake* < lat. *pace(m)*, *ohore* < lat. *(h)onore(m)*, *liburu* < lat. *libru(m)*, *herren*, *herrenka* < esp. *renco*, *rengo*), baina beste batzuk ez hainbeste (*aizkora* < lat. *asciola*, *begiratu* < lat. *vigila* edo euskaratik *begi*, *aitortu* < aragoiera zaharreko *aytorgar*).

Askoz gutxiago izanik ere, litekeena da antzinako hizkuntza zeltetatik harturiko lexikoa ere izatea (*mando*, *gori*, *maite*, agian *izokin*, baina azken hitz horren jatorria latin berantiarreko *esocina* izan liteke, Asturietako *esguín* «izokin gaztea» kide izanik) eta germaniar hizkuntzetatik ere bai (agian *urki*). Arabieratik harturiko hitzak ere badira (*alkandora*, *azoka*, baina gehienak erromantzeak iragazirik etorri dira.

Ondare-lexikoari dagokionez, oso gutxi dakigu zehazki. Hala ere, gaur egungo ikerketek (Joseba A. Lakarraren eskutik) adierazten dute, antza, jatorrizko lexikoaren multzoaren muina erro laburretan, monosilabikoetan, oinarritzen zela eta, hortik abiaturik, hizkuntzaren bilakaeraren ondorengo urratsetan, bi silaba edo gehiagoko erroak sortuz joan zirela. Euskarak hiztegi etimologiko on baten premia gorria du.

## Idazkera

Euskarak, XVI. mendean idazten hasi zenetik, alfabeto latindarra erabili du, bere kokaleku geografikoaren eraginez. Gaur egun, euskal alfabetoak bost bokal ditu:

- a, e, i, o, u. Zubererak seigarrena ere badu: ü.

eta ondorengo kontsonante hauek:

- b, d, f, g, h (gorra mendebaldeko euskalkietan, hasperendua ekialdekoetan), j (gipuzkeran, ahoskera belarra du, gaztelaniaz bezala; gainerako euskalkietan eta euskara batuan, sabaikaria), k, l, m, n, ñ, p, r, s, t, x, z.

Gainera, beste bost kontsonante ere baditu, beste hizkuntzetikako maileguak idazteko:

- c (eta haren aldaera ç), q, v, w, y.

Kontsonante horietako batzuk konbinatuz, ondorengo digrafo hauek sortzen dira:

- dd, rr, tt, ts, tx, tz.

Azentuari dagokionez, ez da idazkeran adierazten.

# Literatura

## Ahozko literatura

*Sakontzeko, irakurri: «Ahozko euskal literatura»*

Ahozko literaturak aipamen berezia behar du. Euskararen idatzizko garapen mugatua dela eta, ahozko literaturaren agerpenek indar berezia izan dute. Horrela, atsotitzak, baladak eta kopla zaharrekin batera, besteak beste, berebiziko munta du bertsolaritzak.

*Sakontzeko, irakurri: «Bertsolaritza»*

Nahiz eta lehenagoko aztarnak ere badiren, bertsolaritza XIX. mendetik aurrera garatu zen Euskal Herrian. Ez zen lurralde guztietan indar berarekin hedatu, ordea. Gipuzkoako eskualde batzuek eman zituzten bertsolaririk ezagunenak. XIX. mendeko gerra eta gatazka ugariek eskaini zuten bertsotarako gairik. Hori dela eta, frantsesen aurkako, karlisten garaiko eta Kubako gerrei buruzko bertso mordoxkak iritsi zaizkigu: ahoz aho banaka batzuk, idatziz gehienak. Kanta paperen bidez zabaldutako bertsoak oso modan egon ziren, eta zenbait kasutan orduko gertaera eta albisteak jakinarazteko modurik herrikoienetako bat zen.

Mende hartako bertsolari zaharrenen artean Xenpelar errenteriarra dugu ospetsuena. Haren bertso-sorta askok bizirik diraute euskal kantutegian: *Betroiarenak*, *Pasaiako zezenarenak* edo *Ia guriak egin du*, esaterako. Bat-bateko bertsolari moduan nabarmendu ez baziren ere, Jose Mari Iparragirre eta eta Bilintxen bertsoak ere aipagarriak dira. Lehenaren *Ume eder bat* eta *Gernikako arbola* edo bigarrenaren *Bein batian Loiolan* eta *Loriak udan intza bezela*, oso ezagunak dira. Azpimarratzekoak dira Iparraldeko koblakariak ere, hala nola Zuberoako Piarres Topet «Etxahun» barkoxtarra (*Ürx'aphal bat badügü*, *Maria Solt eta Kastero*...) eta Nafarroa Behereko Joanes Oxalde bidarraitarra (*Lurreko ene bizia*, *Iruñeko ferietan*...).

## Euskara idatziaren lehen urratsak


Euskara idatziaren lehen urratsak.

Euskaraz idatzitako lehenengo hitzak Akitania eta Pirinio inguruetan aurkitutako erromatarren garaiko hilarrietakoak dira ( I. mendea) Jainko eta Jainkosen izenak izan litezke: *sembe* > *seme*; *anderexo* > *andereño*; *cison* > *gizon*...

Gaur egun ezagutzen den euskara ez da antzinaro hartakoa bera. Horregatik aitzineuskara deritzo garai hartako euskaldunen mintzairari; eta aitzineuskaratik gaur egungo euskarara, garai hartako latinetik gaur egungo gaztelaniara dagoen antzeko aldea edo handiagoa legoke.

Orain arte euskaraz idatzita aurkitu diren esaldirik zaharrenak Donemiliagako glosak dira (X. mendea). Horren zergatia hauxe da, herri literatura eta tradizioa ahoz transmititu izan direla batez ere.

Glosak, latinezko testuak ulertzeko monje kopistek idazten zituzten oharrak dira, hau da, zatirik zailenei buruzko ohar batzuk "*Guec ajutuezdugu*" (ez dugu laguntzarik) eta "*Içioki dugu*" (piztu dugu) dira.

Bernat Etxepareren *Linguae vasconum primitiae* liburua euskaraz argitaratutako lehena da, 1545ekoa. Izenburua latinez dago, baina liburu osoa euskaraz. Idazleak idazterakoan ez zuen eredurik izan. Horregatik, grafia asmatu behar izan zuen eta euskararen soinuak, hotsak, paperean emateko erdaran erabiltzen ziren letrez baliatu zen: apeza izanik, baitzekien erdaraz idazten.

*Jesus Krist Gure Jaunaren Testamentu Berria* (1571) Joanes Leizarragak idatzi zuen. Apaiz katolikoa zen, baina garaiko Nafarroako erregina protestante bihurtu zenean higanot bihurtu zen, beste kristau asko bezala. Erreginak Itun Berriaren itzulpena euskarara egitea eskatu zion Leizarragari, dotrina kalbinista zabaltzeko. Horrela, *Jesus Krist Gure Jaunaren Testamentu Berria* argitaratu zuen 1571. urtean. Liburua Vulgatatik itzulia bada ere, baditu itzulpena ez diren beste atal batzuk: horien artean, Nafarroako erreginari zuzendutako gomendio gutuna, non Euskal Herria izenari lurraldea zehazten zaion, baita euskara eta euskalkien izan zituen arazoak azaltzen dituen «Heuscalduney» deritzon atala ere.

*Gero* (1643) euskal prosaren gorengo emaitza da, eta aszetika deritzon azpijeneroko obra unibertsala, nolabait 1643. urtean azaldu zen, Bordelen inprimaturik. Haren egile Pedro Agerre Azpilkueta (*Axular*) Nafarroa Garaiko Urdazubi herrixkan jaio zen. Axular goitizena bere jaiotzeko baserritik datorkio. Iparraldeko Saran eman zituen Axularrek bere urterik gehienak, hango errektore edo parroko. Liburuaren hizkuntza eredua, geroago lapurtera klasikoa deitu zena da. Eredu horretara heltzeko, Axularrek herriak ulertzeko moduko hitzak eta adierazpideak bilatzen ditu, baina horretan aberastasunik batere galdu gabe. Horregatik esaten da Axular dela euskal prosaren benetako sortzailea, Leizarragak bidea nolabait jorratu bazuen ere.

*Eguna* (1937) euskara hutsean idatzitako lehenengo egunkaria da. 1921ean sortutako Donostiako *Argia* astekaria bilakatzeko ahalegin guztiek lur jo bazuten ere, hazia ereinik zegoen euskaltzaleen artean. Egunkaria gerra hasi arte, hala ere, ez zen gauzatu, Eusko Jaurlaritzak 1937. urtearen hasieran *Eguna* plazaratu zuen arte. Sei hilabete eskas iraun zuen lehenengo euskal egunkariak, militarrek ekainean Bizkai osoa kontrolatu bitartean, alegia.

## Literatura idatzia

*Sakontzeko, irakurri: «Euskal literatura»*

Euskarak lapurtera idatziaren bidez, batik bat, bizi zuen berpizkundea. Ondokoak izan ziren euskal literaturari hasiera ematen zioten autoreak:

- Bernart Etxepare (1480(?)–?): *Linguae Vasconum Primitiae* (1545);
- Joan Perez Lazarraga (1548(?)–1605): *Lazarragaren eskuizkribua* (1567);
- Joanes Leizarraga (1506–1601): *Jesus Christ Gure Jaunaren Testamentu Berria* (1571)

Hurrengo mendeetan gainerako euskalkiek idatzizko garapen handiagoa izan zuten. Euskalki literarioak lapurtera, bizkaiera, gipuzkera eta, apalkiago, zuberera izan ziren. Berpizkunde osasuntsu baten ondoren, hegoaldean XVIII. mendean geldiune bat jazo zen, non erlijio-testuen itzulpen txepelen erdian Agustin Kardaberazen *Eusqueraren berri onac* nabarmendu zen. Era berean, egile handirik izan zen: Axular XVII. mendean, Juan Antonio Mogel eta Pedro Antonio Añibarro XIX.enean eta Estepan Urkiaga *Lauaxeta*, Txomin Agirre, Xabier Lizardi eta Gabriel Aresti besteak beste, XX.enean.

1968tik aurrera, euskara batuaren garapenarekin, euskarazko literatura azkar hazi zen, eta egun asko dira[32] euskal idazleak, besteak beste:

- Joxe Azurmendi (1941–)
- Ramon Saizarbitoria (1944–)
- Arantxa Urretabizkaia (1947–)
- Joan Mari Irigoien (1948–)
- Anjel Lertxundi (1948–)
- Mariasun Landa (1949–)
- Bernardo Atxaga (1951–)
- Koldo Izagirre (1953–)
- Xabier Montoia (1955–)
- Lourdes Oñederra Olaizola (1958–)
- Joseba Sarrionandia (1958–)
- Unai Elorriaga (1973–)
- Harkaitz Cano (1975–)

# Euskara munduan

## Euskal Herriaren inguruan

Euskara Bearnoko hainbat herri eta auzunetan mintzatua da. Herri eta auzune horiek Zuberoaren inguruan daude. Honako hauek dira: Aramitze, Arriba, Arribalda, Azpilda, Ereta, Hagoeta, Jeruntze, Lixoze, Nabarzi, Orin eta Tabaila-Uzkaine. Batzuek zerrenda horretan sartzen dituzte Eskiula, Jeztaze eta Ozaraine-Erribareita ere, baina gehienetan Zuberoako herritzat hartzen dira.

## Aspaldiko bisitariak: Donejakue bidea

Euskal Herria igaroleku zelako beste froga bat Donejakue bidea da. Erdi Aroan hasi zen, eta denbora luzez (X. mendetik XIX.eraino) erromes asko heldu ziren Europa osotik Compostelara, Done Jakue apostoluarena omen zen hilobia ikustera, zerua irabazteko bidea zelakoan. Bideko pausaleku handienetakoa zen Orreagako monasterioak, konparazio batera, oraindik XVII. mendean urteko 20.000 janari ematen zituen. Euskarak harridura pizten zuen bidaiarien artean. Itsaso erromanikoaren barnean euskararen uharte ikusgarria ageri zen. Horregatik, bidaiariek hiztegitxoak osatu zituzten, batzuk oso zaharrak, XII. mendekoak.

Beilarien artean Aymeric Picaud frantsesa dugu famatuena gure historian. Picaud frantziar erromesak Done Jakue bidea egin zuen XII. mendean eta ikusitakoaren gida bat latinez idatzi. Bertan euskaldunak eta lurraldea deskribatzen ditu eta kexu ageri da eman dioten tratuaz. Hala ere, euskarazko hitzen zerrenda bat bildu zuen, ezagutzen den lehen euskal hiztegitxoa bilduz. *Codex Calixtinus* (1132–1135) latinezko liburuan Pirinio hegoaldeko biztanleak «nafarrak» (*nauarri*) deitzen ditu; iparraldekoak, ordea, «baskoak» (*bascli*). Hala ere, ez direla bereizten dio: berdin jan, jantzi eta hitz egiten dutela.

Arnold von Harff alemaniar zalduna, 1496–1499 urteen artean egindako erromesaldietan, Euskal Herrian ere izan zen, eta erromesaldi horien berri eman zuenean, euskarazko hiztegitxo bat jaso zuen.



Euskal Herria Donejakue bidean izateak Europako bisitari ugari ekarri ditu.

## Euskara bidaiari

Euskalduna euskaraz hitz egiten duen pertsona da, non jaio zen edo non bizi den berdin dio. Beraz, euskaldun guztiak ez dira Euskal Herrian bizi, Euskal Herritik kanpo ere euskaldunak bizi dira eta horren froga bizia dira munduan zehar topa daitezkeen Euskal Etxeak edo Euskara edo Euskal Kultura irakasgai dituzten zenbait Unibertsitate.

Historian zehar ez dira gutxi herria utziz mundu zabalera abiatu zirenak. XVI. mendeaz geroztik, Amerikarako bidea izan zen norabide nagusia. Ameriketan egiten zituzten lanbideak desberdinak dira, baina zenbait garaitan artzaintza nagusia zen. Argentinan, Buenos Aires hiriburuan esne industria XIX. mendean euskaldunen eskuetan zen, hala nola, gazitegiak (okela kontserbatzeko industria, alegia); bi lan horiek «euskaldunen lanak» deitzeraino heldu ziren. Horretaz gain, euskaldunak aritu ziren Ameriketako hainbat eta hainbat jardueratan: Kaliforniako urre-meatzeak, ostatuak eta merkataritza, Argentinako Pampa ordekan, unai gisa...

### Euskal etxeak

*Sakontzeko, irakurri: «Euskal etxeak»*

Euskal etxeak atzerrira joandako euskaldunak batzen diren lekuak dira. Elkarte horien helburua elkarren arteko laguntza eta euskal nortasuna babestea dira. Horretarako ekintza ezberdinak antolatzen dira: Euskarazko klaseak, kanta eta dantza taldeak, aldizkariak, liburuak, festak, bertsolari txapelketak, eta abar.

Munduan zehar dauden euskal etxeetatik zaharrena Montevideoko (Uruguai) *Laurak Bat* euskal etxea da, 1876. urtekoa. Urte berean, Argentinan Laurak Bat izena duen beste euskal etxe bat zabaldu zuten halaber.

Gaur egun, guztira 162 euskal etxe ofizial daude mundu osoan zehar eta beste 30 bat inguru oraindik ofizialak ez direnak.

#### Euskara, munduko unibertsitateetan

Euskarak eta euskal kulturak interesa sortzen dute Euskal Herritik at. Horren oinarrian arrazoi desberdinak daude, zientifikoak eta sentimentalak.

Arrazoi zientifikoek mugiarazten dituztenentzat, euskara ikasgai edo ikergai da. Horientzat, euskal hizkuntzaren eta kulturaren ezaugarri bereziak dira interes-sortzaile; adibidez, euskara lurralde berean sustraituta gutxienez hogei mendetik gora egin duen hizkuntza izatea, eta ahaide ezagunik gabeko hizkuntza izatea.

Arrazoi sentimentalak dituztenak, ordea, garai bateko egoera sozio-ekonomikoak bultzatuta, bizimodua ateratzera atzerrira joan behar izan zutenak edo horien ondorengoak dira. Migrazioaren ondorioz, euskotarren komunitateak sortu dira han-hemenka, eta euskaldunak dira haietako hainbat.

Edonola ere, arrazoia bata ala bestea izanik, interes horri esker euskararen eta euskal kulturaren presentzia asko hedatu da munduan zehar.

### Euskal pidginak Islandian eta Kanadan

*Sakontzeko, irakurri: «euskara-islandiera pidgina» eta «algonkin-euskara pidgina»*

Euskal Herriko baleazaleek pidgin bi sortu zituzten Ipar Atlantikoan egindako bidaietan: Islandian euskara-islandiera pidgina, eta Ternua eta Labradorren algonkin-euskara pidgina. XVIII. mendearen inguruan galdu ziren, baina idatzizko lekukotasun apur batzuk gorde dira.

## Euskararen aldeko gizarte mugimendua

Euskara, hizkuntza gutxitua izanik, ez da egoera arrunta bizitzen ari bere lurraldean. 1980ko hamarkadatik hainbat aurrerapauso eman badira ere (hizkuntza koofiziala da Euskal Autonomia Erkidegoan eta Nafarroako iparraldean), zenbait esparrutan oso presentzia eskasa du. Horri aurre egiteko, frankismo bukaeratik talde ugari sortu dira euskararen alde lan egiteko, zeregin horretan jada ziharduten taldeei gehituz.

### Erakundeak

- Euskaltzaindia: Erakunde araugile, iradokitzaile eta zuzentzailea.
- Eusko Ikaskuntza: Erakunde zientifiko-kulturala.
- Euskararen etxea: Euskarari buruzko gune espezializatua: Erakusketa, mediategia, liburutegia...
- Helduen Alfabetatze eta Berreuskalduntzerako Erakundea (HABE).


Euskaldun berri plaza Ozaeta Araban

### Elkarteak

Hauek dira euskararen alde diharduten elkarte nabarmenenak:

- Euskal Herrian Euskaraz (EHE)
- Euskararen Gizarte Erakundeen Kontseilua (*Kontseilua* izenaz ezagunagoa)
- Topagunea, Euskara Elkarteen Federazioa.
- Alfabetatze Euskalduntze Koordinakundea (AEK)
- Hizkuntz Eskubideen Behatokia

## Hedabideak

- Egunkariak: *Berria* eta hainbat eskualdetako *Hitza*.
- Aldizkariak: *Argia, Nabarra, Gaztezulo, Galtzaundi, Ttipi-Ttapa, Aldaize*...
- Irratiak: Euskadi Irratia, Euskadi Gaztea, Segura irratia,Info7, Arrate irratia, Irulegi irratia, Gure Irratia...
- Telebistak: ETB 1, ETB 3, Hamaika telebista eta tokiko hainbat telebista.

## Erreferentziak

- Edukiaren zati bat «Euskararen muga historikoak» (http://www.ehu.es/seg/his/1/5) artikulutik atera da. Artikulu hark Ivan Igartua eta Xabier Zabaltza ditu egile, eta Creative Commons Domeinu Publikoa (https://creativecommons.org/licenses/publicdomain/) lizentziarekin argitaratutako *Sareko Euskal Gramatika*tik (http://www.ehu.es/seg/) (ISBN: 978-84-693-9891-3) hartu dugu.
- Edukiaren zati bat «Hizkuntzaren egitura» (http://www.ehu.es/seg/his/1/2) artikulutik atera da. Artikulu hark Ivan Igartua eta Xabier Zabaltza ditu egile, eta Creative Commons Domeinu Publikoa (https://creativecommons.org/licenses/publicdomain/) lizentziarekin argitaratutako *Sareko Euskal Gramatika*tik (http://www.ehu.es/seg/) (ISBN: 978-84-693-9891-3) hartu dugu.


1. ↑ *VI. INKESTA SOZIOLINGUISTIKOA (2016).* (http://www.euskara.euskadi.eus/contenidos/nota_prensa/vi_inkesta_sozioling_2016/eu_def/adjuntos/vi_inkesta_eu.pdf) . Noiz kontsultatua: 2019-01-22.
2. ↑ «VI. Inkesta Soziolinguistikoa» (http://www.euskarabidea.es/fitxategiak/irudiak/fckeditor/NAF-Inkesta%202016%20euskaraz(1).pdf) *Euskarabidea* . Noiz kontsultatua: 2019-01-22.
3. ↑ «VI. Inkesta Soziolinguistikoa» (https://www.berria.eus/dokumentuak/dokumentua1730.pdf) *Berria* . Noiz kontsultatua: 2019-01-22.
4. ↑ «Trebiñuko enklabea» (https://euskaraba.eus/edukiak/uploads/2016/12/Azterketa-soziolinguistikoa-Trebinu-2012.pdf) (PDF) *euskaraba.eus* . Noiz kontsultatua: 2019-01-19.
5. ↑ «euskara» (http://www1.euskadi.net/harluxet/hiztegia.asp?sarrera=euskara), Harluxet Hiztegi Entziklopedikoa.
6. ↑ **a b c** Eusko Jaurlaritza (Hizkuntza Politikarako Sailburuordetza), Nafarroako Gobernua (Euskarabidea), Euskararen Erakunde Publikoa / Office Public de la Langue Basque. *VI. Inkesta Soziolinguistikoa, Euskararen eremu osoa.* (https://www.irekia.euskadi.eus/uploads/attachments/9954/VI_INK_SOZLG-EH_eus.pdf?1499236557) . Noiz kontsultatua: 2019-01-04.
7. ↑ *Euskal AEko biztanleria per lurralde eremua, unitateak, euskara-maila eta aldia.* (http://eu.eustat.eus/bankupx/pxweb/eu/euskara/-/PX_3671_ne02.px/table/tableViewLayout1/?rxid=b253d3e5-6db8-4c9a-9768-5685c6b5c6b9) Eustat . Noiz kontsultatua: 2019-01-04.
8. ↑ Koldo MITXELENA: «Euskararen bide luze bezain malkarrak», in *Euskararen liburu zuria*, Euskaltzaindia, 1978.
9. ↑ Alfontso Irigoien (1977). «Geure hizkuntzari euskaldunok deritzagun izenaz» (http://www.euskaltzaindia.net/euskera/dok/1158

5.pdf), *Euskera*, XII, 513-538 orrialdeak.

10. ↑ Alfontso Irigoien (1990). «Etimología del nombre vasco del vascuence y las vocales nasales vascas descritas por Garibay», *Fontes Linguae Vasconum*, 56.
11. ↑ «euskara», in Koldo Mitxelena: *Orotariko Euskal Hiztegia* (http://www.euskaltzaindia.net/oeh), Euskaltzaindia.
12. ↑ Ikus argazkia, azalpena eta honen irakurketa, Alicia M. Canto doktoreak hemen egina: "La Tierra del Toro: Ensayo de identificación de ciudades vasconas", *Archivo Español de Arqueología* 70 zk., 1997, 31-70 orr., 35 orr., 9 nota y 6. irudia edición digital (http://web.archive.org/20050122175459/es.geocities.com/los_vascones/vascones_tierra_toro.htm). Hilarrian hau aipatzen da:*Narhunges, Abissunhari filius* eta bere balizko lehengusua *Umme, Sahar(i) f(ilius)*
13. ↑ Francisco Beltrán Lloris: «Los andosinos ¿una antigua etnia pirenaica?» (http://publicacions.iec.cat/repository/pdf/00000127%5C00000032.pdf), *Recull de conferències 2008 : 2225 anys des dels andosins ; 3rs Debats de recerca*, Societat Andorrana de Ciències, 2010. 69-82. orrialdeak.
14. ↑ **(Gaztelaniaz)** Luis Núñez Astrain. *El euskera arcaico. Extensión y parentescos.* (http://www.erabili.eus/zer_berri/muinetik/dokumentuak/2004/El_Euskera_Arcaico_Extension_y_Parentescos.pdf) . Noiz kontsultatua: 2019-01-05.
15. ↑ **(Gaztelaniaz)** Eduardo Aznar Martínez. *El euskera en La Rioja. Primeros testimonios.* (http://www.euskonews.eus/0581zbk/gaia58101es.html) Euskonews . Noiz kontsultatua: 2019-01-05.
16. ↑ **(Gaztelaniaz)** Eduardo Alfaro Peña. *"Oppida" y etnicidad en los confines septentrionales de la Celtiberia.* (https://uvadoc.uva.es/handle/10324/28659) Universidad de Valladolid. Facultad de Filosofía y Letras . Noiz kontsultatua: 2019-01-06.
17. ↑ Eusko Jaurlaritza. *Euskararen historia zertzeladak: kronologia.* (http://www.euskara.euskadi.eus/r59-738/eu/contenidos/informacion/hist_zertzeladak_kronologia/eu_7400/hist_zertze_kronologia.html) Eusko Jaurlaritza . Noiz kontsultatua: 2019-01-07.
18. ↑ «1801. Euskaldunen herrian barrena. Wilhem von Humboldt» (http://www2.gipuzkoakultura.net/humboldt/eus/gaiak.php) *www2.gipuzkoakultura.net* . Noiz kontsultatua: 2018-11-26.
19. ↑ *Diasporako euskararen egoera.* (http://www.euskonews.eus/0557zbk/gaia55704eu.html) Euskonews . Noiz kontsultatua: 2019-01-06.
20. ↑ Txoperena Iribarren, Maddi Ane. (2015-01-28). «Ezin izanen dute euskara ofizial izendatu» (https://www.berria.eus/paperekoa/1791/010/001/2015-01-28/ezin_izanen_dute_euskara_ofizial_izendatu.htm) *Berria* . Noiz kontsultatua: 2018-06-26.
21. ↑ Peruarena Ansa, Mikel. (2018-06-24). «Zirrikitu bat» (https://www.berria.eus/paperekoa/1951/020/003/2018-06-24/zirrikitu_bat.htm) *Berria* . Noiz kontsultatua: 2018-03-26.
22. ↑ *VI. Inkesta Soziolinguistikoa, Euskal Autonomia Erkidegoa.* (https://www.irekia.euskadi.eus/uploads/attachments/8569/VI_Inkesta_Soziolinguistikoa_EAE.pdf) . Noiz kontsultatua: 2019-01-04.
23. ↑ *Trebiñuko enklabea, azterketa soziolinguistikoa 2012.* (http://www.euskara.euskadi.eus/r59-738/eu/contenidos/informacion/argitalpenak/eu_6092/adjuntos/trebinu.pdf) . Noiz kontsultatua: 2019-01-04.
24. ↑ *Actitud de los habitantes de Villaverde de Trucíos hacia el euskera: 1986-2002.* (http://www.euskaltzaindia.net/dok/euskera/59375.pdf) . Noiz kontsultatua: 2019-01-04.
25. ↑ **(Frantsesez)** VI° Enquête Sociolinguistique en Euskal herria (Communauté Autonome d'Euskadi, Navarre et Pays Basque Nord) (http://www.mintzaira.fr/fileadmin/documents/Aktualitateak/015_VI_ENQUETE_PB__Fr.pdf) (2016).)
26. ↑ *Hizkuntza Erabileraren Kale-Neurketa. Euskal Herria, 2016.* (http://www.soziolinguistika.eus/kaleneurketaeh) Soziolinguistika klusterra . Noiz kontsultatua: 2019-01-07.
27. ↑ «Araba euskararen lurralde peto-petoa» (http://www.euskaraba.com/euskara/albisteak/araba-euskararen-lurralde-peto-petoa), *Euskaraba*, 2010-02-25.
28. ↑ Koldo Zuazo (2007), «Euskalkien jatorriaz eta bilakaeraz» (http://etgz.files.wordpress.com/2008/01/berriazuazoeuskalkienjatorri.pdf), *Berria*, 2007-12-09.
29. ↑ Koldo Zuazo. *Euskalkien sorguneak.* (http://euskalkiak.eu/site/jatorria.php). CC-BY-SA lizentzia.
30. ↑ Torrealdai, J.M. 2014: "Batasunaren bidea urratzen. Txillardegiren eragintza praktikoa", *Jakin*, 204:11-96.
31. ↑ Pello Salaburu: «Kasu markak» (http://www.ehu.es/seg/morf/5/5), *Sareko Euskal Gramatika*.
32. ↑ *Armiarma.eus - Literaturaren Zubitegia.* (https://zubitegia.armiarma.eus/?a=a) . Noiz kontsultatua: 2018-09-2.

## Ikus, gainera

- Europako hizkuntza gutxituak
- Euskal Herriko hizkuntzak
- Euskararen debekua
- Euskararen historia
- Euskararen Etxea
- Euskararen jatorria
- Euskararen bilakaera XX eta XXI. mendeetan
- Euskara Nafarroako Erriberan

## Kanpo estekak

- Euskaltzaindia (http://www.euskaltzaindia.net/)
- Euskararen etxea (http://www.euskararenetxea.net/)
- Hiztegia.net ataria (http://www.hiztegia.net)
- 2001eko mapa linguistikoa (Eusko Jaurlaritza) (http://www.eustat.es/elem/ele0000400/tbl0000494_e.html)
- Mapa linguistikoa (Muturzikin) (http://www.muturzikin.com/carte.htm)
- Euskara Kultur Elkargoa-*Basque Cultural Foundation* (http://www.euskarakultur.org/)
- Lore Agirrezabal, *Erromintxela, euskal ijitoen hizkera*, Argia astekarian (http://www.argia.com/argia-astekaria/1913/erromintxela-euskal-ijitoen-hizkera)
- Bai Euskarari Ziurtagiria (http://www.baieuskarari.org/)
- Euskarazko "webtv" bat iparraldean (http://www.kanaldude.tv/)


Euskarazko Wikipedian bada atari bat, gai hau duena: **Euskara**

## Kanpo estekak

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q8752 · Multimedia: Basque language (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Basque_language)<br>**Identifikadoreak** · BNF: 11937951j (https://catalogue.bnf.fr/ark:/12148/cb11937951j) (data) (http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb11937951j) · GND: 4088809-5 (https://d-nb.info/gnd/4088809-5) · NDL: 00560548 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00560548) · NKC: ph118780 (https://aleph.nkp.cz/F/?func=find-c&local_base=aut&ccl_term=ica=ph118780) · SUDOC: 027309169 (https://www.idref.fr/027309169) · AAT: 300387955 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300387955) ·<br>**Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Basque-language) |

## Euskara

### Euskarari buruzko artikuluak

| | | |
|---|---|---|
| **Euskararen historia** | | Euskararen jatorria |
| | **Antzinaroa** | Euskararen ahaideak • Aitzineuskara • Akitaniera |
| | **Erdi Aroa** | Huescako euskara • Codex Calixtinus • Donemiliagako glosak • Euskara Nafarroako Erriberan |
| | **Aro Modernoa** | Euskara arkaikoa • Euskararen debekua |
| | **Aro Garaikidea** | Euskararen bilakaera • Euskara Bigarren Mundu Gerran • Euskal pizkundea • Euskara batua |
| **Pidginak eta pagadolektoak** | | Erromintxela • Euskara-islandiera pidgina • Algonkin-euskara pidgina • Zelta hizkuntzak eta euskara • Euskañola |
| **Euskal literatura** | **Ahozkoa** | Bertsolaritza • Euskal baladak • Bereterretxen khantoria • Brodatzen ari nintzen • Kopla zaharrak • Euskal kantagintza berria • Euskal abeslariak |
| | **Olerkigintza** | Etxahun • Iparragirre • Bilintx • Elizanburu • Arrese Beitia • Lizardi • Lauaxeta • Gabriel Aresti • Atxaga • Sarrionandia • Koldo Izagirre • Pako Aristi |
| | **Eleberrigintza** | Etxepare (*Linguae vasconum primitiae*) • Lazarraga (*Lazarragaren eskuizkribua*) • Leizarraga • Axular • Larramendi • B. Mogel • J.A. Mogel • Agirre • Txillardegi • Saizarbitoria • Urretabizkaia • Atxaga • Anjel Lertxundi |
| | **Antzerkigintza** | Pastoralak • Lartzabal • Elizegi |
| **Euskalgintza eta politika** | **XX. mendera arte** | *Hiztegi Hirukoitza* • *El Imposible Vencido* • Xaho • *Uskal-Herriko Gaseta* • Euskal Lore Jokoak • Euskal Pizkundea • Bonaparte • Nafarroako Euskal Elkargoa • Euskal-Erria elkartea • Euskal-Erria |
| | **XX. mendea - Gaur** | Euskara garbia • Euskaltzaindia • Koldo Mitxelena • Euskara hezkuntzan • Ez Dok Amairu • Ikastolen bultzatzaileak • Euskararen aldeko jaiak • Euskaraldia • AEK • Korrika • Seaska • Ikastolak • EHU • Euskararen normalizazioa |

### Euskalkien mapa



Egizu klik euskalki bakoitzaren lurraldean haren orrialdera joateko.



Ezkerraldeko mapan 2011. urtean euskaraz ulertzen zutenen kopur ageri da, herriz herri.

> % 80
> % 60
> % 40
> % 20
> % 0

